# HERRICO BESTA.

AIREA : *Hau da Frances istuendaco allegrancia handia.*

1.

Herrico besta denaz gueroz, aurthen cantuen suyeta,
Nic ere cerbeit erran nahi, deçagun dembora pasa,
Ez naiz, sobra dakit, sasona ganda,
Guehiago gazte, bai hala da,
Banan egun huntan çaharric nihon causitcen othe da ?
Ez, thamburen chirola sonuz guciac airosten guira.
Goacen beraz çahar gazteac, goacen herrico plaçarat,
Atseguinez hain aberax den egun huntaz gozatcerat. (*Ter.*)

2.

Egun guciz famillac dira, milla guisaz, barrayatcen,
Anaya arreba yosienac elkharrenganic urruntcen;
Amac nigarretan umeac deitcen,
Harren boça nihorc ez aditcen.
Banan herrico bestarekin, guciac etcherat biltcen,
Beren burhaso maite hoyec amulsuki besarcatcen.
Egun eder, egun goçoa, atseguinez gainditua,
Berantegui aditu duçu gure bihotzen oihua! (*Ter.*)

3.

Guiçon gazte gorphutz lerdena, hunat guerrico gorria,
Eta çuc nescatcha criketa, laster cacha soin churia.
Goicetic dembora dago garbia,
Nihon hedoi bat ez, cer loria!
Yadan urrundic ikhusten dut plaça yendez estalia,
Lot beraz çuen makhilleri, lagunac gaiten abia.
Goacen, goacen çahar gazteac, goacen herrico plaçarat,
Atseguinez hain aberax den egun huntaz gozatcerat. (*Ter.*)

4.

Plaçarat heldu garenean, cer çaicu colpez aguertcen ?
Sei herronketan gazteria, çaharrac ez ciren azken ;
Çortci pillotari dira yokhatcen,
Beguiac dituzte llilluratcen.
Nahiz orano bere boça nihorc ez duen altchatcen,
Segur naiz bakhotchac duela gogoz bederen cantatcen :
Egun eder, egun goçoa, atseguinez gainditua,
Berantegui aditu duçu gure bihotzen oihua! (*Ter.*)

5.

Aurthen Urruna lehen dugu, besta gucien nagusi;
Ikhusten dut eta halere casic frogaric ez aski ;
Cein goradanic den Printcebat yautsi,
Gurekin egungo khide yarri.
Escualdunac! ez da seculan Yaun hori behar ahantzi ;
Ez orai bakharric bihotzez, canta deçagun goraki :
Biba, biba gure Printcea, hambat talentuz bethea
Talentuen berdina dago choilki çure berthutea. (*Ter.*)

6.

Nahiz milla gauça nintuzken oraino nic erraiteco,
Printceaz mintçatuz gueroztic, guciac litezke flaco.
Lurrera cerutic ez erortceco,
Muga da nere ustez ichiltceco.
Aski beraz, bestaliarrac orai, etcherat gateco,
Amarra çuen escarpinac, ama guci beira dago.
Goacen, goacen, goacen guibelat, banan heldu den urthean :
Aurkhi gaiten, nere lagunac, aurthengo toki berean. (*Ter.*)

**LARRALDE**, *Miricua.*

BAYONNE. — Imp. E. LASSERRE, rue Orbe, 20.